# ANTZERTI



EUSKAL-ANTZERTIAREN ILEROKOA



# "BI AIZPAK"

LIZARDI'tar XABIER.

BI EKITALDITAN

5'en ta 6'en Zenbakia | 1932—Oŕila-Garagaŕila



1932.—Tolosa'n: Lopez Mendizabal'enean.

# IĻEKO BEŔIAK.

## Shakespeare'ri gorasaŕea.

Joŕaiļaren 23'an, ingalandar antzerkigiļe aundi ta ospetsu oni, bere eŕian Stratford-Onavon'en, mundu guzitik bildutako ordezkariak ajola aundiko omenaldi ta gorasaŕea egiñak ditugu. Shakespeare goitaŕa Stratford'en jaio, bizi ta il zan; ta bertan datza bere gorputz iļa Irutasun deunaren Eliza-pean.

Abagune au dala-ta jai ta beste egipenak, oroigaŕitzat opa dizkiote.

Gales'ko printzeak itzaldi batean omenaldia eskiñi omen zion. Ta aundiki oŕek berak lenengoz zabaldu zuan, uŕezko giltza batez *"Shakespeare-Antzoki"* beŕia.

Antzoki beŕi ta eder onek, diotenez, 200.000 libera esterlina kostia da: au da amar miļoi peseta inguru.

Egun guzian beste jai asko ospatu zitun Stratford'ko eŕiak: eŕiko elizetako kanpai guziak astindu zituzten ikastoletako auŕak.

Shakespeare-aldiko jantziaz apaindurik, dantza zaŕak dantzatu ta, azkenik, kalez-kale jende talde ikusgaŕiak ibiļiak dira. Irurogei abenda-eŕiko ordezkariak beren ikuŕiñekin agertu ziran. Gure Euskal-Eŕia, soñez Stratford'en izan ez zan aŕen, gogoz bederik, beste ludi guziko eŕiekin elkartu nai du Shakespeare'ri agur egiteaŕen.

Shakespeare'n antzerki bikañak izkuntza geienetara itzuliak dira. *"Macbeth"* deritzana Alzaga'tar Toribio jaunak euskeratu zuan; ta Eusko-Ikaskuntza'k argitaratua izanik, edozein liburutegietan eskatu diteke.

ANTZERTI'k, uste degun bezela bizitza sendo ta luze bat artzen ba'du, ta onela dira aztaŕenak,

—To be or not to be,
That is the question.....—

ezpairik gabe ta laister Shakespearen beste "trajediren" bat euskeratua eskeñiko dio bere irakurle ta antzerki-zaleai.

Au izango da arentzako ta guretzako omenik mamitsu ta jatoŕena.

---

## Isidoro Parada (G. B.)

Azken-auŕeko zenbakian Parada jaunak antzerki beŕi bat idatzi zuala *"Ortzetik jausita"* —lenengoz *"Sabin-etxe"*ko taldeak Bilbo'n azaldurikoa—adierazi gendunean, nork esan bear zigun laister beŕi mingaŕi ta gaŕatza elduko zitzaigula? Parada'tar Isidor'en eriotza. Goyan bego. Ez gendun asko uste








# "BI AIZPAK

Lizardi'tar Xabier'ek Pantzeratik antolatua.

ANTZEZKIGILEAK

| | |
|---|---|
| PANTXIKE. | ANDRE MADALEN. |
| MANTONI. | Iru Mutikoak: Xabier—Iñaki—Yontxu. |
| ALKATEA. | DONOSTI'ko ALKATEA. |

## LENENGO EKITALDIA.

*(Etxe-bafu txiro, baña txukuna: maia, alkiak eta abar. Ezkefetara, ate bat. Atzean, beste bat, eta leioa ere, biak baratzera ufatuak.)*

*(Pantxike ta Manfoni, aizpa Nezkazafak—urterik aiei antzematen ez da efez—elkafen aldamenean eseri-ta daude, dirua mai-gañean zenbatuz. Zenbatzafea, Pantxike, Manfoni, aizparen beso-gañetik begira.)*

### LENENGO AGEŔALDIA.

Pantxike ta Manfoni.

*Pantxikek.*—... eta bederatzi, befogeita-bi...; ta bost, befogei-ta-zazpi...; ta zortzi...

*Manfoni'k.*—Bart-afatsean aña, Pantxike?...

*Pantx.* .—... befogei-ta-amabost...; eta zortzi... Bai, Manfoni bart afatseko kontua ateratzen zaidan. Onenbeste ez geniñan jaso San Juan aufeko azoka ezkeroztik.

*(Zenbatzen jafai beza, ixilik. Manfoni oro begi. Alako batean, efiko erlojuak kanpai bat: Manfoni'k burua jaso.)*

*Mant.* .—Pantxike!...

*Pantx.* .—Manfoni...? *(Bere zeregiñari utzi gabe).*

*Mant.* .—Zer ordu diñagu?

*Pantx.* .—Al zekiñat!... *(Ixilune labufa)* Bederatzi-t'erdiak, ustez...

*(Diruak poliki antola bitza mai-kutxan—kajoiean—.)*

*Mant.* . *(Jeiki, zapi bat artu, ta eridiei autsa kenduaz).* Etzekiñat irudipena dedan, baña, Amabirjiñetako prozesioa ezkeroztik, burua etzeukanat bere onean. Izan ere, alako eguzkiak itunan egun artan!... Amar-t'erdiak dirala esan ba-idanan, berdin-berdin sinistuko niñan... Alaz guztiaz ere, amar-t'erdirik ez dala banintxekiñan!

*Pantx.* .—Bederatzi-t'erdikoa izan den.

*Mant.* .—*(Etsi-etsian)* Bederatzi-t'erdikoa, alegia...

*Pantx.* .—*(Ixilune baten ondoan).* I ez ago onik, Mantoni...

*Mant.* .—Onik ez ote-natxegon, ba?... E-tzan uste: buruak ematen zidan ori batzuetan...

*Pantx.* .—Leandro jauna deitu bear uken... Urteak, Mantoni; adiña dabilkin ik atzetik!

*Mant.* .—Adiña atzetik! Zertarako bear ote natxion?...

*Pantx.* .—"Okel-eŕe" 'neko atsoa ere olaxe ibilia den. Azkenean, sendagileak "rizinoa" eman zitxionan, ta bertan bota zizkiñan aize txar guziak.

*Mant.* .- Aizeak? Aizea besterik ez, Pantxike? *(Sorbaldak uzkurtuz)* Izan ere, "Okel-eŕe"'neko atsoa...!; beiaren korotza ere, sendagileak eman ezkero, pozik jango liken ark...

*Pantx.* .—Badakin, Mantoni, ama zanak ere, urteak menderatu zutenean...

*Mant.* .—Enetxoa! Amarena ez den berdin: ura bi alaba egiñik unan!

*Pantx.* .—Ta zer zion?

*Mant.* .—Ai!, asko, Pantxike!... Leandro jaunak ondotxo zekin... *(Aldapena)* Baña, oiek ere, enetxoa, artzeko kanpaia danean ditun azkaŕak! Gañontzean?: iñoren osasuna zaitzeko, bazekiñat nik oiek ainbat... Zer egiten diñe, ba?... Zereko jakintsuak!... Jendea aspeŕarazten besterik etzekiñe ta...!

*Pantx.* .—Adi zan, adi zan... Gazte, beŕi, Madri'koa edo dalako ori.....—zera, "Boxt"'eneko goian bizitzen jaŕi dana...—ori azkar puŕukatua omen den, ba...

*Mant.* .—Azkaŕa, beraz? Azala, esan ba'unan!... Bazteŕetan neskatxa gazteai goxokeriak esaten...; oŕetan azkaŕa omen den. Katalin'ek dionez!

*Pantx.* .—Uuu!... Katalin'ek! Ikusi ere egin al din, ba ura?

*Mant.* .—Ez; ikusi ez!... Itz egin ere!... Ta, guzia jakin nai

ba-den, besotik eltzera egin ta ozta-ozta igesi al izan omen zitxionan!

*Pantx.* .—Ut, txatxua i beŕiz! Dana sinisten den! Ark gizonezkoari uŕeratzen ez utzi!

*Mant.* .—Ba, ez den bakaŕa... Or zeuden "Ataŕamentu"'neko neska, ta "Txepetx"'enekoa, ta Ixabel bera ere, emakumea!...

*Pantx.* .—Ixabel!

*Mant.* .—Ea: Alkateak "señorito" ori eŕitik bialduko ote duan ere zabaldu den eta... Izan ere, nik beti esaten dedana: aŕotz xankame oiek diñe emengo neskatxai esan-beaŕa?... Botako nizkiken danak ibai zabalera?

*Pantx.* .—Um!... Iri ere zertxobait goxo esan ezkero...

*Mant.* .—Ui! Ara bestearen ateraldia! Ez al zidatenan esan izandu, oiek baño galai edeŕagoak! Bai makiñatxo batek!...

*Pantx.* .—Ta, nezkazar gelditu intzanan?

*Mant.* .—Ta i?... Onek eman zizkigun edeŕak!

*(Ixiĺunea. Etxe-lanetan asi bitez Pantxike, altzoan otaŕa artu ta babaŕun-zuritzen. Manĺoni'k, etxe-garbiketa buka, eŕatza bazteŕtu, ta tresna oro antolatzen diardu.)*

*Pantx.* .—Biar igande...—Oĺaskoa ilko ote diñagu?

*Mant.* .—Bai, Pantxike, il zagun... Ain txuxen ere, oĺasko-gose natxoon aspaldi ontan... Ta zer da, guzia ere? Aragia baño garestiago etzetoŕen, ta!

*Pantx.* .—Ez-garestiago, dion? Merkeago esan naiko den! Bai ainbat! "Kazkazuri" arakiñari galde bestela... Lapur galdu bat besterik ez diñagu ori. Oŕena geiegikoa den. Utziko al diñagu guzion artean etxea bete okel!

*Mant.* .—Asmatuko litxiguken ordun ere ark lapuŕeta-bidea!... Baña, oiek ola dirala, noan oĺoetara.

*(Ateruntz bijoa, "eskalaproietan" oñak sartuaz. Irten-agiñean, geldi bedi. Aizpak burua jaso du, ta biak beude adi. Baratzako ate-otsa, gero oin-ots aztuna, gero utsa. Bereala, norbaitek ataritik, abots lodiaz:*

*Alkateak.—(Ataritik)...* Eup! Ez al da iñór bizi?

*(Oŕen ondotik, ixiĺune luzea beŕiro. Neskazar biak, beren artan geldi. Atarikoak, ozenago:)*

*Alkateak.– (Ataritik)...* Eup! Ez al da bizi iñor?

*(Manŕoni'k nozbait ere burua atera beza:)*

*Mant.* .—Ene!... *(Burua iraduz beŕiro sarturik)* Pantxike, Alkate jauna diñagu!

*(Betor Pantxike'rengana. Onek babaŕun-otaŕa mai-azpian gorde beza. Biak, eskuak mantalaz igurtzi ondoren, bijoaz baratza-ateruntz, agurka. Alkatea agertu bedi atean).*

## BIGAŔEN AGEŔALDIA.

### Pantxike, Manŕoni ta Alkatea.

*Alk.* . .– Pantxike, Manŕoni; barkatuko didazute zuek naspilatzera etoŕia...

*Mant.* . Gu naspilatzera, Alkate jauna? Bego ixilik! Beroŕen etxean sartu dala egin beza. Ementxe; eseri ementxe...

*Pantx.* . - Emen, emen: besaulki ontan obeto egongo da. Ta, andre Ageda onik dago? Ta txikiak? Ain txuxen ere atzo ikusi nun txikiena...

*(Alkateak itz-egin nai luke, baña tarterik ez diote ematen.)*

*Mant.* .—Esaion Alkate jaunari, Pantxike, esnez beartu ezkero, bere etxerako lain izango gendukela...

*Pantx.* .—Orixe bai, alegia! Ez geiegirik degulako, baña...

*Mant.* .—Auŕak zer diran badakigu; aiek, eman-ala garbitzen baitue!

*(Alkateak beŕiro ere itz-egin nai, baña alpeŕik).*

*Pantx.* .—Oraintxe joateko nindunan, ain txuxen ere, Alkate jaunarenera. Baditugu ilar batzuk berebizikoak, eta bear ba-da andre Ageda'k pozik artuko lizkiguke. Badakigu berori oso zalea dana, Alkate jauna...

*Mant.* . Aurtendaño, bederik, zerbait eman izan digu luŕak. Emendik auŕera lanak... Or gañeko etxe zar ori egingo ba'lute, agur gure eguzki goxoak!

*Pantx.* .—Nolanai ere, guzien onerako ez al da ondo ematen duten baratzak ez ondatzea?...

*(Alkateak itza atera nai: besteak tarterik ez ematen).*

*Mant.* .– Bai nik uste! Ta..., Madriltaŕa omen da, ain txuxen ere, gañeko sail ori erosi duana...

*Pantx.* . —Madriltar naiz donostiar, erosteko eskubidea badin. Baña... nolabait, Alkate jauna, gain ortan etxerik egitea galazi al ba-lezaioke...

*Mant.* .—Ori, ori, bada! Ez da guregatik bakañik, noski: berořek badaki, Alkate jauna...

*Alk.* . . Bai, bai, ikusiko degu, ikusiko degu, iñondik al baliteke... Baña, orain-oraingoz, badet beste arazo bat zuekin lenago erabaki-beařa... Jakin nai nukena..., tira..., nola esango nuke?..., alegia, mesedetxo bat egin nai ote didazuen...

*Pantx.* . Mesedetxo bat...

*(Elkaři kezkaz begiraturik).*

*Alk.* . . - *(Ixiľune baten ondoan)* Ara: auxe da guzia. Udako opořaldia (barkazioak) bitarteko, mutiko umezurtz bat etxean artuko al zenduteken...

*(Ixiľunea. Aizpak, elkaři ondo begiratu ondoren, atsekabez itz-egin bezaiote.)*

*Mant.* .—Ai, ai, ai! Ai ene!... Ta non sartzeko guk aur gaxo ori?... Biok ere oxta-oxta artzen gaitu txabola xar onek-eta...

*Pantx.* . - Izan ere, nolatan artu etxean iñoren auřik, non-etzin ona-ta ez eskeintzekotan?... Gure ezerez gořian!... Ori dago bada!

*Alk.* . .—*(Zer-erantzun biľa, baño arkitu-eziñik)* Tamala da...

*Mant.* .—Ta nondik norakoa genduke aur ori?

*Alk.* . .—Donosti'koa... Ogei biali dizkidate, ta an-emen banatuak nitun guziak. Zuei eztizuet adirazi ezer, tokiz oso uři zeratela bai-banekin. Baña, azken-orduan, zer gertatuko-ta, Etxezuri'ko atsoa gaxotu... Gaur goizean; mutil kozkor oiek iritxi diranakin batera! "Etxezuri"'koa iru artzekoa nun, ta ořa, orain irurok beste norabait zuzendu bear... Ni bi artuta nago, ta geiagorentzat tokirik ez... Donosti'ko Udalaren eskoletakoak dituzue, ta nik ere, jakiña, ango Alkatearekikoa ondo egin nai, ta...

*Pantx.* . —Auxen da, ba, lana; ta guk iñola ere ezin!...

*Mant.* .—Besterik iñork eřian ez ote-lezazke artu?...

*Alk.* . . — Aur bakoitzeko eguneko duroa ta saria...

*(Ixilunea. Aizpak geldirik.)*

*Pantx.* . — *(Eřuki-asperen laři bat boteaz)* Aingeru gaxoak!

*Mant.* .—Kale gořian uztea ere Jainkoak ez din agintzen, ba!

*Pantx.* .— Biotzik duan kristauak ezin lezaken ori egin, Manťoni...

*Mant.* .—Atari soĺean, alajaña, eŕukaŕi oiek! Gurera ez-ta, nora joan bear diñe, bada, esaidan?... "Txanbolin"'enera?... "Prakax" enera?...

*Pantx.* .—"Txanbolin"'enera, enetxoa!

*Alk.* . .—Gizajoak, zortzi baditu bereak-eta...

*Mant.* . — Ez dago zer esanik geiago, tira!... Mutiko gajo oiek biali bezazkigu, Alkate jauna!

*Alk.* . .—Baña..., irurak bear dituzue?

*Mant.* .— Irurak, irurak!... Zer egingo diñagu, ba, Pantxike?

*Alk.* . .—Non sartu bear dituzue, ordea?

*Mant.* .—*(Eskua bulaŕean dula)* Biotzik badiñagu, ala ez diñagu, Pantxike?

*Alk.* . . — Bai, ori bai; baña oztopo aunditxoa izango da zuentzat... Tokirik-eza...

*Pantx.* .—Tokia? Antolatuko degu, nola-ala! Manťoni'k diona, Alkate jauna: bularpean zerbait degunok... Beko gela, aundi-askia da... Gu mandioan etzin gintezte.

*Alk.* . . - Mandioan, emakumea? Ta ez al litzake egokiago mutiko oiek an sartzea?...

*Pantx.* . — Gaxoak! Ikusiko ba'lu, Alkate jauna, gure mandio ori!... Eguzkiak eta aizeak bere mende dute zearo artua: ez al da ala, Manťoni?

*Mant.* .—Ametsetan ere, beroŕek ez lüke an bere burua ikusi nai... Baña, moldatuko al gaitun, enetxoa! *(Aizpari)* Ez bedi estutu, Alkate jauna.

*Alk.* . . - *(Zutik)* Atsegin aundia eman didazute: oso zerate onak eta bizkoŕak. Etxean ditugu mutiĺok: bereala ekaŕiko dizkizuet.

*(Ixiĺunea. Alkatea ateruntz).*

*Pantx.* .—*(Ez-arian bezela)* Egunero duroa esan du, ez da ala, Alkate jauna?

*Alk.* . .—*(Gelditua)* Bai, aur bakoitzarengatik egunero duroa. O, ta txintxo ordaintzen duan jendea da! Ea, begira: Donosti bateko Udalak!... Jakiña, naikoa naspiĺatuko zaituela mutil oiek; baña iĺabete axkar joaten da...

*Mant.* . — *(Ixiĺune baten ondotik)* Iĺak zenbat ditu gaur, Pantxike?

*Alk.* . .— Dagoniĺak (Abuztuak) ogeitaseigaŕena, egutegiak gezuŕik ez ba-dio.

*(Aizpa biak ixilik. Badirudi era bereko zenbaketak egiten ari dirala. Alkateak ateruntz egiten du).*

Esandakoa, bada: bereala emen gera.

*Pantx.* .—Bai, bijoa Alkate jauna, aur gaxo oien eske, guzia antolatuko degu-ta.

*Alk.* . . Bost minutu bařu emen gatoz. *(Bijoa).*

## IRUGAŘEN AGEŘALDIA.

### Pantxike ta Manřoni.

*Mant.* .—Bai, egiña zeon, Pantxike: aur eřukaři oiek, nola utzi bear genizkiñan, bada, atarian?

*Pantx.* .—Ago ixilik! Alkate jauna ori esaten ari zala, xamurtu zaidan bařen guzia. Pozik ikusi izango nizkiñan orduntxe bertan irurok atetik sartzen!

*Mant.* .—Nik dakizkidan zenbaitek etziñen, ez baiezkoa ain eřez emango...

*Pant.* .—Bai; iřikitzen natxeon, zein etxeetan artu dituzten jakiteko. Zeken asko baitzeon bazteřetan: zeken asko!

*Mant.* .—Entzun den: Etxezuri'koak, alajañena!, iru artzekoak omen itunan... Baldinbaite! Aiek duten etxea izanda: au añako lau baden-ta. Amabi artu ba'lizkiñe ere!...

Banatxian, banatxian oloetara, mutiko oiek iritxi bitartean. *(Atetikan)* Ara, beřiz: andre Madalen diñagu.

*(Bijoa. Pantxike'k babařun-otařari ekiten dio beřiro.)*

*A. Madal.*—*(Ataritik)* Bazoaz, Manřoni?

*Mant.* .—*(Berdin)* Oloetara, andre Madalen, oloetara: bereala nator. Sartu, sartu, Pantxike or dezu-ta...

*(Andre Madalen agertu bedi.)*

## LAUGAŘEN AGEŘALDIA.

### Lengoak eta Andre Madalen.

*A. Mad.*—Egun on: zer degu, Pantxike?

*Pantx.* .—Ementxe ari gera, andre Madalen...

*A. Mad.*—Babařun-zuritzen?... Ai zazu, ai zazu-ta...; zuek artzen omen dituzute Etxezuri'ra bear zuten mutikoak, eee?...

*Pantx.* .—Ene, mila bider! Badakizu dagoneko? Nork esanda?

*A. Mad.*—Matxin Bizardo'k esan dit: oraintxe topo egin degu biok.

*Pantx.* .—Ta Matxin Bizardo'k nondik zekian?

*A. Mad.*—Eŕetore jaunaren bidez, noski, eŕetoreari alkateak esanda.

*Pantx.* .—Tira ba, bai: egia da. Pentza zazu, Alkate jaunak bere laŕitasuna adirazi digunean! Ta bakaŕa artuko gendulakoan zetoŕen gizajoa. Baña, eŕukia tartetik danean, andre Madalen...!

*A. Mad.*—*(Batere sinisten ez diotelarik)* Oŕa ba!... *(Eseri bedi)* Ta, non sartu bear dituzute!

*Pantx.* .—Antolatuko degu zerbait, ez dago estutu-beaŕik... Ta, esan, esan, zuk jakingo dezu-ta: zeñetan-beste artu dituzten...

*A. Mad.*—Auŕak, alegia?... Bada..., bata Alkatea, bestea Eŕetore jauna, biok bina. "Tonior"'enekoak, bat. Eŕenaren alargunak, iru. Eta zuek...; baña zeon beŕi bai al-dakizue... A-ta, zera..., "Kukutx-eztul"'enekoak, "Argiña"'neko atsoak...

*Pantx.* .—"Argiña"'nekoak zenbat?

*A. Mad.*—Bakaŕa.

*Pantx.* .—Bakaŕa?... Xuŕa, ez bestelakoa!... Ta..., Kukutx-eztul"'enekoa ere esan dezu...?

*A. Mad.*—Bai: lau artzen ditu.

*Pantx.* .—Baldinbaite! Ark ez artzezkerotan!... Iñoizko zimelkerien ordañetan, nonbait!... Ta nork geiago?...

*A. Mad.*—Nik dakidanik... *(Atarian otsa Andre Madalen jaiki bedi)* Ara, or dituzue mutikoak! Banoa ni.

*Mant.* .—*(Ataritik)* Sartu, sartu, eder oiek! - Ederki eman ere!, ez jauna, ez: berori auŕetik.

*(Alkatea sartu bedi, atzetik Mantoni dula, ta uŕena iru mutil kozkor, seinatik bederatzina urtekoak. Bi zaŕenek begiak noranai dabizkite, ikusmiñez. Txikiena, negaŕa dariola).*

## BOSGAŔEN AGEŔALDIA.

Lengoak, Mantoni, Alkatea ta iru mutikoak, (A. Madalen'ek, bereala alde).

*Alk.* . .—Auxe dezute etxea, mutikoak. Andereño txintxo auek artu nai izan zaituzte. Egun on, Madalen.

*A. Mad.* -Jainkoak digula guzioi.

*(Bijoa, irteterakoan ate-atean pitin baten gelditzendalarik. Mutikoak elkari egotzita beude.)*

*Pantx.* . Ez bildurtu, eder oiek, ez bildurtu. Ikusiko dezute zein ederki egongo zeraten.emen. *(Zařenari):* Izena zer dek ik, maite?...

*Iñaki'k* .—Mendiburu'tar Iñaki, andrea; donostiaŕa, ta beroŕen mirabe, zernaitarako.

*Pantx.* .—Alajaña!, ez den au oso tuntuna. *(Bigařenari):* Ta zuk?

*Xabier.* .—Ni naiz... Xabiertxo.

*Alk.* . .—Alkorta'tar Xabiertxo. Aita itxasoan galdua du. Ama, sare-konpontzaīea. Bestearena, oīo-saltzaīea.

*Mant.* .—*(Txikienari):* Ta zu, īipīo, nor zaitugu? *(Auŕa ixilik)* Ara!, katuak jan dio mingaña... *(Besteei):* Mingañik badu, ala ez du?

*Iñak.* .—Bai, bai: izketan ondo daki oŕek, gogoak ematen dionean.

*Mant.* .—Trixte al ago, ba, gaxo ori? Amarengana aurki joango aiz beŕiro, gizona.

*Alk.* . .—Ez: ama iīa du onek. Yontxu du izena. Abizena..., aztu zait. *(Paper batzuk zakeletik atera ta Pantxike'ri damazkio)* Ara: guzien nondi-norakoak ortxe jartzen ditu garbiro. Ea, bada, Pantxike, Mañoni: nitzaz beartzen ba-zerate, deitu, noiz-nai. Ta zuek, mutikook... Baratzera pixkatean bialduko ba'zenitukete, orixe onena.

*Mant.* .—Ederki esana. Artaraxe etxe beŕiaz etsiko dute eŕezena.

*Alk.* . .—*(Maitero)* Loreai pakean utzi bear zaie, gero!

*(Bijoaz Iñaki ta Xabier, zalaparta bizian, baratzera. Yon, geldirik ale-auŕean. Oso da txikia. Besteengana ez ausartzen, baña pozik joango ole litzaken ere badirudi. Tařte luzean, besterik ez bedi entzun, bi zařenen oju alaiak baizik. Pantxike'k beŕiro babaŕun-otaŕari bekio. Mañoni'k mantala erantzi, jantzi beŕiro, alki ori onuntzatu, lengo tokiratu bereala Biak dirudite pīin bat bere oñetik ateraziak Alako batean, mutikoen kaŕaxi biziagoek ikaratzen dituzte).*

*Panxt.* .—Ikustan non dabiltzan txeŕen oiek.

*Mant.* . *(Ateruntz dijoala)* E, e! Biuŕiak, alenak! Ortik ez dala ibili bear! Aŕapatzen ba-dizutet atze-aldea! *(Urduri sartuaz)* Letxu tartean, makilka, Jaungoiko maitea!

***(Bat-batean, txikiak laisteŕari ekiten dio, besteekin***

*jostatzera joan-beaŕez. Baña, Pantxike'ren deadaŕak zakarki geldiarazten du):*

Pantx. .—Aizak, aizak, txepetx! Ator i onuntza, babaŕuna zuritzen laguntzera.

*(Txikia betor Pantxike'rengana, begiak luŕera ditula, ta exeri bedi aren oñetan).*

Mant. .—*(Beŕiro ateruntz)* Ea mutikoak. Atozte pixkatean. *(Beŕiro betor barneruntz)* Non lo egin bear duten erakutsiko zionet.

Pantx. .—Erakutsi akien, bai.

*(Iñaki betor auŕena, atzetik bestea, biak laisterka bizian).*

Xabier. .—*(Arnas-estuka)* Ikusi al dek nolako urazak?

Iñak. .—Aien buruak! Etzeudikek txaŕak, olio-ozpiñetan.

Mant. .—*(Zai dagokie ta, bear ba-da berak nai baño zakarkixeago, ala dietsa:)* Begira gero, etzaitzatedan nik aŕapatu beŕiz nere letxueri ostikoka.

*(Mutikoek burua makur. Mañoni eskuiko ateruntz bijoa).*

Atozte, ea: zuen oe-tokia erakutsi nai dizutet: mandioan dezute.

*(Bijoa. Bi mutiko zaŕenak atzetik. Zurubi estuan gorako otsa Pantxike ta txikia bakaŕik geldilu bitez, biok babaŕun-zuriketan).*

Pantx. .—Yontxu det izena, beraz? *(Mutikoak buruaz baiezkoa ozt-ozta, neskazaŕari begiratu gabe)* Yontxu... ta, zer geiago? *(Mutila ixilik. Ordun, Pantxike, Alkateak emandako agiriei begira asi bedi)* Intxausti'nekoa, ez da ala? *(Buruaz, baiezkoa. Ixilunea. Babaŕun-zuriketa, eten-gabean. Pantxike'k, astiro, goitik bera mutikoa aztertu beza)* Ta norekin bizi aiz, ba, txiki? Amonatxoarekin? *(Besteak ez erantzun)* Izekorekin? *(Buruaz, baiezkoa)* Ta nolakoa da, ba, zuen etxea? Beiak ba'al-dituzue?...

Yontxu'k.—

*(Burua jaso, ta, bat-batean atsoa aŕiarazten dularik, aren mutur-mutuŕean paŕe-puŕustaka).*

—Ja, ja, ja!... Auxen da paŕegurea!... Beiak, alajaña, Donosti'ko kalean!!...

(OIALA)

# BIGAŔEN EKITALDIA.

LENGO TOKIA BERA. ĪLABETE GEROAGO.



## LENENGO AGEŔALDIA.

Iñaki ta Xabier.

*(Iñaki ta Xabier, batak eŕatza ta besteak zarpil bat eskuan dituela, elkaŕen aŕapazka dabiltza, gela betean, paŕe ta kaŕaxi ta zalaparta.)*

*Iñaki'k* .—Eeee! Ikutu aut! *(Gelditua).*
*Xabier* .—Ez, jauna! Zapiarekin! Oŕek ez dik balio.
*Iñaki* .—*(Beŕiro erasoaz)* Ez du balio? Ta onek?...
*Xabier* .—*(Itzul-egiñik, isekaz)* Eeee! Eeee! Aŕapatu ezetz! Aŕapatu ezetz!...
*Iñaki.* .—Ezetz? Orain esango diat!
*Xabier* . - *(Alki baten gañera igo bedi)* Koxka!
*Iñaki.* .—Buru-aundi aŕaioa!
*Xabier* . - Aŕapatu al-nauk?
*Iñaki.* .—Jetxi, gauza ba-aiz...
*Xabier* .—Je, je!... Ori..., nai ba-det!

*(Iñaki'k zakarki eraso bekio. Xabier'ek luŕera jauzi egin beza. Berealа, berebiziko zalapartaz, leen baño areago, ekin bekie elkar atzi-bearka. Alkiak ankaz gora, maia iraulita, ontzi, ogi-otar ta abaŕ luŕera-bidean....*
*Bat-batean, atzeko ate-zuloan, Mantoni agertu bedi. Ikaratuta geldituko da.*
*Iñaki'k ordun, bere zarpila jaso, ta mai iraulia sendoro igurtzi beza. Xabier'ek, asnas-estuka, eŕatza beŕiro eskuratuz, bazteŕak garbitu bitza.)*

## BIGAŔEN AGEŔALDIA.

Lengoak eta Mantoni.

*Mant.* .—*(Ia, itz-egiteko ere gauza ez dala.)* Nere Jaungoiko maitea!!... Baña..., baña..., baña... !!!... *(Itzik ezin,*

*ta ixil-ixilik asi bedi, alkiak, ontziak, maia ta abar jaso ta bere tokiratzen. Guzia oso zuzendu artean, etzaio arnasa bere onera itzuliko.*) Auek etsaiak, Jauna!... Baña, egunero-egunero, deabruarena egiten arkitu bear ote-zaituztet?... Non da Pantxike?...

*Iñaki.* .—(*Mantoni'ren abotsa pařegařiro berdinkatuz*) Nongo Pantxike gero, andrea?...

*Mant.* .—Ara... zera...! Pailaso motela, ez besterena!... (*Xabier'eri*) Non da Pantxike?...

*Xabier* .—(*Besteak bezelatsu*) Andre Pantxike, beraz?

*Iñaki.* .—(*Burua nastu-beařeko kařaxiez*) Oĺoetara joan da! Oĺoetara joan da! Oĺoetara joan da!

(*Mutil biok, elkaři eskutik eldu, ta kařaxika ekin bekiote neskazar gaxoaren inguruka.*)

*Biak.* .—Oĺoetara joan dala! Oĺoetara joan dala!...

*Mant.* .—Baña..., Jesus, ene! Ixilduko al-zerate, gogaikaři alenok? Bein esanda ere: "oĺoetara joan da"; ez al-da naikoa?

*Iñaki.* .—Jee, je, je! Oĺoetara..?. bai zera!... Ez, ez, ez! Txanbra beřia jantzita aldegin du...

*Xabier* .—Sedazko txanbra! Papaŕa agirian dula!...

*Mant.* .—Ago ixilik, lotsagabea...

*Iñaki.* .—Ezta, ezta, ezta!... Gezuŕa ori ere! Ja, ja, ja!

*Xabier* .—Egia, egia! Donosti'ko Alkatea omen-datorkigu etxera...

*Iñaki.* .—Iaufiii!... Au dek umorea!

*Mant.* .—Donosti'ko Alkatea? Nork esan dizute ori?

*Iñaki.* .—Petratxo'k esan digu, Petratxo'k.

*Xabier* .—Petra begi-okeřak, andretxo!

*Mant.* .—Donosti'ko Alkatea gurera! Ederki eman ere...! Petratxo'ren asmabeařak... Guretzako dago Donosti'ko Alkate jauna! Obe bai, egia ba'litz!... Baña, oiek ořela dirala, ba'al-dakizute zer egingo dezuten orain, txintxo-txintxo? Patata mordoska bat baratzatik ekaři... Aguro, ordea!

(*Iñaki ta Xabier laisteɹka bijoaz, atzeko atetik.*)

*Iñaki* .—(*Burua beřiro azalduaz*) Ara, ara!... Azaldu da, azaldu da!

*Mant.* .—Nor azaldu, gero?

*Iñaki.* .—(*Kařaxi bizika*) Pantxike azaldu da: gure Pantxike!

(*Iñaki beřiro izkutatu bedi. Geroxeago Pantxike dator.*)

# IRUGAREN AGERALDIA.

## Mantoni ta Pantxike.

*Mant.* .—Nondik ator, enetxoa?
*Pantx.* . Oloetatik. Nondik etortzea nai den?
*Mant.* .—Oloetan intzanan, beraz...
*Pantx.* . –Yontxu etori al-da?
*Mant.* .—Non den, ba?
*Pantx.* .—Erosketan. Baña, ark ez din beñere presarik. Ain toki txikian olako gibel aundia ezkutatu litekenik ere! Buruak ematen diona beste-besterik ez din egiten...
*Mant.* .—Ark, ori? Ta besteok, zer egiten diñe, ba?... Emengo iskanbila ta iraulketa ikusi izan ba-itunan, aistian!
*Pantx.* .—Zorarazi bear gatxione.
*Mant.* .—Guzia lurean, ankaz gora: maia, alkiak, ontziak... Deguntxoa purukatu bear zigune azkenerako!
*Pantx.* .– (*Alki bat azterluz*) Izan ere, iraun bear din onek, olako txerenekin?
*Mant.* .—Gaiztakeriak bakarik poz-ematen zione. Ta, ateraldi batzuk badizkiñe gero! Alakoak nondik datozkien ere!
*Pantx.* .—Donoxtiaren malizia, den ori...
*Mant.* .—Donostiar-kaxkarinkeria!...
*Pantx.* .—Guk ez bezela, zenbaitek onezkero burua galdu ziñen.

*(Beriro, ataritik, mutilen jolas-otsa. Len bezela.)*

*Ataritik*.—(E, eee! Arapatu aut. Ez, jauna—Buruaundia, ez besterena!— Ator, ator, Pinto!...)

*(Gero, ots ori ostendu bedi, ururiratuz.)*

*Mant.* .—(*Neka-neka eginda*) Ai aizpa... Burua nik baño sendoxeago bear din, bizimodu ontarako...
*Pantx.* .—Bai nik baño ere. Onela jaraitzez-gero, aurki naun Santa Ageda'n.
*Mant.* .—Ta noiz aldegin bear duenik ere?... Ez al-din iñork ezer adirazi?...
*Pantx.* .—Atzo, alkateak... Aurki etoriko al-zazkiela bila, baña noizik ez jakin.
*Mant.* .—Ilabete biar diñe.
*Pantx.* .—Ezin esango diñagu ezer, egunekoa ordaintzen duten bitartean...
*Mant.* .—Egunekoa ordaindu! A, gaixoa!: beriro egin-beareko tratua ba'gendu!...

*Pantx.* .—Utzion oferi, osasuna ta pakea galtzen ez ba-dizkigute betirako!...

*Mant.* .—Odol gaiztorik ordaintzen al-diñe ba, duro zikin ofekin?

*Pantx.* .—Bai: eraman ditzatela lenbait-leen. Onela etzeon gauza onik?

*Mant.* .—(*Ormei ikarez begiratzen diela*) Etxeak eliken zutik iraungo beste ilabetean.

*Pantx.* .—(*Buruari eragiñaz, mai-aldera bijoa, arkatzaren eta paper-punta baten eske. Betor befiro eseritzera, ta bere baitan ari ba'litz bezela:*) ...Iru bosteko, amabost... (*Aizpari*) Zer gastatu unan atzo?

*Mant.* .—Nikolaxa'nean, iru laurleko...

*Pantx.* .—Ai, Jaungoiko maitea!... Iru bosteko, amabost... Amabosti iru kendu ta... Amabosti iru...

*Mant.* .—Ogitan, bi laurleko... Jafi al-den?... Amabiri bi kendu ta... A, ta... Atzo, igande, aragia ere bageniñan: lau laurleko... Olioa, bi... Zenbat gelditzen zain?

*Pantx.* .—Amafi sei kenduta... (*Ixilunea*) Ta azukrea?... Ta kafea?...—(*Zenbaketak buruz egiñik*) Zera...!, gerenetik jafi-beafa, gañean...

*Mant.* .—(*Bertaratuaz*) Benetan, gerenetik ari gaitun?...

*Pantx.* .—Ea..., erofek ikus: amasei laurleko ta lau txakur aundi...

*Mant.* .—Amasei ta... Ene, ene!... Elofioa zeukanagu, alajañena!...

*Pantx.* .—Ta, adi zan... Ori oloen eta txefiaren jana sartu gabe... Kontu garbia egiñenean, oiek ere bafuan bear lieken!

*Mant.* .—Nik ala uste, aizpatxo: nik ala uste!... Auxen da lana, enetxoak!

(*Ingiari begira geldi bitez, buru makurka. Bitartean, atzeko atetik betor Yontxu, zofoz eta pardelez besoak eten-beafean.*)

## LAUGAŔEN AGEŔALDIA.

### Lengoak eta Yontxu.

*Pantx.* .—(*Ingia ezkutatuz*) Or gure gizona!

*Mant.* .—Ala're! Ba'tor? Txoritan ibili al-aiz, ala zertan?

(*Yontxu'k begiratu bat beglo, erantzun gabe.*)

*Pantx.* .—Lasaia, ez bestelakoa! Ordu bete bear al-dek kaletik

etxera? Alderdi edeřeko langilea ago, ire eskuz bizi izaterako!

*Mant.* .—Lotsatu ere ez aiz egiten, lotsatu..., arlote aundi ori?

*(Yontxu'k, txintik ez: ekaři guziak utzi bitza mai-gañean, ta bi atsoei erakutsi bezakie atze-aldea.)*

*Pantx.* .– (*Beřiro arpegiz itzularazten dula*) A, baña, txotxo..., ori guzia ořela uzteko asmoa al-dek? Alajaña...! Atera neri bereala bildu oietako puskak, eta zein-bere tokian ipiñi... Bizkor, gero!... (*Aizpari*) Ikusten al-den!...

*(Yontxu, bilduak ustu ta guzia txukun jaso-ala, ajolagabekeriz asi bedi txistu-joka.)*

Eeee? Txistu-otsak, gañera? (*Besteak ez entzuna*) Aditzen al-dek, bai ala ez?... Donostiar koxkeroen kanta jator bat da au: "Joxe Migel'en batela"!

*(Aizpak, elkaři begira, zer esan ez dakitela)*

*Mant.* .—(*Ixilune baten ondotik*) Oea egin al-dek, txepetx?

*Yontxu* . Ez.

*Mant.* . Oea ba, aguro!... Aidean, esan diat!...

*(Yontxu'k buka beza leengo lana, ta astiro abia bedi eskuiruntz.)*

Zer egin bear den ik, Pantxike?

*Pantx.* .—Auntza ateratzera natxian.

*Mant.* .—(*Yontxu'ri*) Iñor etořiko ba'litz, Pantxike auntza lařarazten dala, ta ni beřiz, kalean: aditzen?

*(Bijoa Yontxu.) (Ixilunea.)*

## BOSGAŘEN AGEŘALDIA.

### Manřoni ta Pantxike.

*Mant.* .—Doloretako Ama! Noizpait ere eramango al-zizkigune! Jakin dezagun baiezkoa ala ezezkoa...

*Pantx.* .—Pakea ar dezagun, zer den gero au!

*Mant.* .—Ta kakalardo ořen ateraldiak entzun al-ditun?

*Pantx.* .—Entzun!... Ilařa añakoa ez den-eta, ořen gizondu-beařa!...

*Mant.* .– Umekondo zelebrea! Besterik olako ez diñat egundo ikusi.

*Pantx.* .— Ez-ta "Potxolo"'nekoa ere..

*Mant.* .— Ez-ta "Potxolo"'nekoa ere..

*(Bijoaz, atzeko atetik, Antzeztokia puxkatean utsik.)*
*(Uřutiratuz, aien oski-otsa. Gero, atzeko atetik, Iñaki'k eta Xabier'ek mutuřa erakutsi bezate.)*

## SEIGAŔEN AGEŔALDIA.

Iñaki, Xabier ta Yontxu.

*Iñaki.* . — *(Ots itoaz)* Ieeup! Yontxu!...

*(Iñaki ta Xabier sar bitez geldiro ta ixilka.)*

*Yontxu* . — *(Bere aldetik mutuŕa azalduaz)* A!, zuek al-zerate?

*(Sar bedi bereala antzeztokian.)*

*Iñaki.* . — Usai egiok, aŕen, sagar oni, kakalardotxo...

*Yontxu* . — *(Begiak aundi-aundi)* Uiii!.. Non atxitu dezute?

*Xabier* . — Sortutako tokian, gizona: zuaitzean! Andre Mañoni'k goizero begietan zun uraxe dek...

*Iñaki.* . — Ar zak, gixonerdi: iretzako zekarkiagu. Gu, auŕetik ordañak jasota gatxeok.

*(Yontxu'k sagaŕa ar beza.)*

*Xabier* . — Mañoni'k artu bear dun biotzondokoa!

*Iñaki.* . — A, zer nolako arpegi-luzatzea, arena!

*Yontxu* . — Jontxo! Edeŕa zeok!

*Iñaki.* . — Aŕaio tripazaia! Andre Mañoni gajoari baño proetxu obea egingo al-dik...

*Xabier* . — Gogoratzen al-zaik, pastela jan genionean?...

*Iñaki.* . — Emonio, tuntuna i beŕiz! Katuak jan zian-ta!

*(Guziek paŕe-algara.)*

*Yontxu* . — Ori katu biuŕia, etxe ontakoa!, eee?...

*Xabier* . — Aŕaio beŕitsua! Gure atsoen auŕean ez dek izaten olako etoŕia...

*Iñaki.* . — Je, je, je! Izan ere, ori arpegia ekaŕi du gizajo onek, aistian! Bazirudiken praie sartu bear zula... Ea, esaiguk, esan: zer egin diotek etxeko-andreei?

*Yontxu* . — Utsa... Berandutxo etoŕi kaletik.

*Iñaki.* . — Ta nora aldegin ditek bi sorgin oiek?

*Yontxu* . — Pantxike'k, auntza ateratzera; Mañoni'k, kalera.

*Iñaki.* . — I, Xabier: ez al-zaik iruditzen guk len asmatutako ipuiak darabilkiela andre Mañoni?

*Yontxu* . — Zer ipui, zer ipui?

*Iñaki.* . — Ara, esango diat.

*(Elkaŕen urbil bitez.)*

*Xabier* . — Gogoan al-dek ik, noiz-ezkero gauden etxe ontan?

*Iñaki.* .—Utzi orain, oneri esan arte... (*Bat-batean atzera begiratu beza, urduri*) E! Ixo! Bazetoztek.

*(Itza baño ariñago ostendu bitez: Xabier, atzeko atetik, orma-ormari itsatsita; Iñaki'k leiotik jauzka egin beza; Yontxu, eskuitik. Berealа, atarian, aizpa bien aotsa, ta, tarteka, bi gizonezkoena.*

*Sartu bitez, eřiko ta Donosti'ko alkateak, Pantxike ta Manřoni.)*

## ZAZPIGAŔEN AGEŔALDIA.

### Eřiko ta Donosti'ko Alkateak, Manřoni ta Pantxike.

*Pantx.* .—Lotsa-lotsa eginda gatoz, Alkate jauna (*Donosti'koari*) Gure etxe apal ontara beok bezelako aundikiak etortzerik...

*Mant.* .—Etortzea asmatzerik ere..., egundo!

*D'ko. A.*—Beraz, iru umezurtz ibiři dituzte andre agurgaři auek?

*Eřiko A.*—Iru, jauna, iru: Mendiburu'tar Iñakitxo, Alkorta'tar Xabier, ta bestea, zera...

*D'ko. A.*—(*Entzuten ez diolarik*) Eta, agi danez, etxeko-andre begikook, lanbide ořek ez dizute eman poz aundirik...

*Mant.* .—(*Indar aundirik gabe*) Oi!, gu oso pozik giñan, Alkate jauna, oso pozik...

*Pantx.* .—Bai; egia esan, gu txoratzen egon gera. Lenbait-leen aldegin dezaten eskatzea, gure adiñaren nekearengatik izan da.

*Mant.* .—Nekearengatik, jauna: ezpaitegu oiturarik...

*Pantx.* .—Ori, ori: ezpaitegu oiturarik... Izan ere, emengo iskanbiřak, emengo iraulbeařa!...

*Mant.* .—Ta esango ba-genduke, alegia, osasunak aldi luzexeago eskatzen ziela... Ordun ez legoke zer-esanik. Baña, ikusiko dituzute, ikusiko!

*Pantx.* .—Oso daude onik: borobildu dira poliki!

*D'ko. A.*—Ez, ta, bidezkoa da, gañera: obeto ibiři diranak leenago aldegitea. Gure diruak ere uřitzen dijoaz, gero!... Baña, zuek, ainbeste nekeen ordañez, aur oien alde egindakoa, benetan aipagařia da. Ez al-da ala, Alkate jauna?

*Eřiko A.*—Bai, noski. Amaika bider entzun didate.

*D'ko. A.*—Nik ere, iñor biali baño, neronek etoři naiago izan det,

auřok jasoaz bat, zuei, nere ta Donosti'ko Udalaren izenean, eskařik beroenak erakustera...

*(Alkatea ta aizpa biak erne-erne dagozkio, aren itz guziei agurka ta baiezka).*

Eřiko Alkate jaun agurgařiari leentxeago eman diot zuentzat idazkitxo bat. Bigařen amabostekoaren ordaña.

*Eřiko A.* - *(Pantxike'ri idazki txiki bat luzetuaz)* Ortxe dago dana, txuxen-txuxen, ustez: ikustazu. Amabost egunekoa ezezik, amaseikoa ere badago. Dagonilak ogei-taamaika oi-ditunik, aaztu neri, alajaña! Ogeitamaika eskutik eta jokoa galdu? *(Kar-kar-kar paře-egiñaz)* Zer derizkiozu, adiskide ona?

*(Atzeko atetik, Iñaki'k eta Xabier'ek, lotsa-antxean, suduřa azaldu bezate).*

## ZORTZIGAŘEN AGEŘALDIA.

### Lengoak, Iñaki ta Xabier. Bereala Yontxu.

*Mant.* . — Ara, ortxe dituzute gure pixpolin gaxoak... Sartu zaitezte, sartu maiteok!

*Pantx.* .—Etoři, belduřik gabe, gure bildotxok... Ikusi emen Donosti'ko Alkate jauna, zuek jasotzera etořia.

*(Iñaki ta Xabier sartu bitez.)*

*D'ko. A.*—*(Begiratu ere gabe)* Bai, benetan, guri-guri egin dituzute. Gertu ditzateke bereala beren pardeltxoak. *(Mutikoei begiratuz)* Baña, iru etzenituten bada?

*Mant.* .—Bai jauna, bai. Txikiena or bařuan dabil. *(Eskuiko atea zabalduz)* Eup, Yontxu, ator, biotza, ator!... *(Beřiro erdira etořiaz)* Gixaxoa! Amarik ez du. Ezagun ere bazun, etoři zanean, dana zikiñak jana...

*Iñaki.* .—*(Aopeka Yontxu'ri)* Bagatxiak emendik ospa, i...!

*D'ko. A.* Ator onuntza, txiki. Ta irurok txintxo-txintxo entzun zadazute. Negařik ez egin, gero? Andre on auekin opořaldi edeřa botea dezute. Orain, zuen etxeetara itzuli--garaia etoři da. A-zer nolako gertaldi politak izango dituzuten, etxekoei ta laguntxoei esateko! Ez al-da ala? *(Besteei)* Ikusten dituzute? Geldi-geldirik; erne-erne?... Iru gizontxo dirudite la? Auek dira benetan mutiko txintxoak! Guziak olakoak izan ba'genitu, ez al-da egia, Alkate jauna? *(Mutikoei beřiro)* Ea, bada: zoazte orain

gertutzera. Luzaroko lana izan-ezkero, gu joan gaitezke, ta zuek *(aizpei)* Udal-etxera ekaŕiko dituzute...

*Iñaki* .—*(Bixi-bixi)* Ez, ez, bereala bilduko degu guzia. *(Beste biei)* Goazemak axkar, moteĺek!

*(Zalaparta bizian bijoaz eskui-aldetik. Zurubian gorako iskanbiĺa entzun bedi puskatean, uŕengo itzen tarteka).*

## BEDERATZIGAŔEN AGEŔALDIA.

### Mutikoak ez gañerakoak.

*D'ko. A.*—Txeŕen oiek naiko lan emango zizuten, bai, sinisten det...

*Mant.* .—Naiko lan... Ara, jauna, egia esango ba-det, bai: naiko lan, eskua bete lan, eman digute. Baña, ez al-gendun oŕenbeste eraman bear gixagaxoengatik?... Ez irabaziarengatik, sinistu beza: kontu garbia egitezkero, gerenetik aritu gera...

*Pantx.* .—Egi uts-utsa: ikusi beza bestela. *(Ingi bat luza bekio: leentxeago kontuk ateratzen ari izan diranekoa).*

*D'ko. A.*—*(Begiratu gabe papera itzuliz.)* Andre gaxoak, andre gaxoak! Nola, bear bezela, eskeŕak eman zuei, ainbesteko onginai ta nekeen ordañez?

*Pantx.* .—*(Lengoari jaŕaituz)* Esan bezela: ogia, esnea, ikatza, babaŕuna, olioa..., oiek guziak ordaindu ezkero, zenbat gelditzen da? Ta, ez dago!; noizean bein, okela ere eman bear zitzaien. Ituŕiko ur garbiez ez dira, gero, moŕosko oiek azitzen! Eta, sinistu beza, jauna: eŕi ontan, mardultxoenetakoak gureak aterako dira, ta ori gu baño aberatsagorik ainbeste dagola...

*Mant.* .—Auŕik artu nai izan ez dutenak gogoratu bakoitzean!... Eŕetzen jartzen naiz gero!... Arbide'nekoak eta..., Begieŕe'nekoak, eta...; zer derizkio, Alkate jauna?... Ta... zuk eta nik dakigun beste ura, iru etxeren ta nik al dakit zenbat soroen jabe dan ura!...

*(Eŕiko Alkatea urduritzen asi da. Burua astintzen du, ta begiak onuntz-aruzka darabiltzi)*

*D'ko. A.*—*(Mantoni'ren etoŕia ebakiz.)* Tira, ba! Zer egingo zaio? *(Eskuak igurtziz)* Guretzako poz aundia da, beintzat, zuek bezelako kristau eŕukioŕak ezagutu al-izatea. Ez al-da ala, Alkate jauna?...

*Eřiko A.*—Bai, ene adiskide, bai: jende zintzorik ere badegu eřian!

*(Mandio-aldean gero ta zarata aundiagoa. Beekoak noizik bein burua abera jaso bezale, urduri.)*

*D'ko. A.*—*(Aobeteka)* Nere adiskidea, donostiar-kume oiek eři txiki ontan opořaldi egitea, gizartearekiko gařantzi aundikoa da. Ez bakařik osasunari buruz. Ori ere ez da, noski, bazteřean uztekoa. Baña, beti ere, badakizu: uri buruaren ta gañontzeko eřien artean, alako elkar-gabea, alako ezin-ikusi sořa izaten da. Urtero, guk aurten bezela, elkar-bidea eman zaiezu: aste bete batzuk elkařekin igaro ditzatela, alegia; ta ordun, elkar-ezaguera badator, badator, poliki-poliki... Ordun, guzien berdintasuna, guzien anaitasuna, askoz ere bertago ikusten dira... Zer gauza edeřagorik, nekazari zintzo auen besoetan gure ola-langiÎeen semeak ikustea baño?... Gizartearen berdintasuna, gizartearen anaitasuna! A, etxekoandre agurgařiak! Asmo aundi oien alde, iñork uste baño lan bikañagoa egin dezute iÎabete ontan!...

*Mant.* .– *(Zer esan ez dakiela.)* Bai, jauna, bai... Ala uste degu, beintzat...

*(Iru mutikoak eskui-aldetik sar bitez, beren bilduak eskuan dituztela.)*

## AMARGAŘEN AGEŘALDIA.

### Lengoak, eta iru mutikoak beřiro.

*Pantx.* .—Gauza guziak jaso al-dituzute?
*Iñaki.* . - Bai, andrea, bai.
*Mant.* .— Ez al-da obe izango, nik, gora joan-etoři bat egitea?
*Xabier.* .– E-tzaigu ezertxo-ere aaztu!
*Mant.* .—*(Goruntz dijoala)* Ezetz?... Ařigařia litzake ořatik!
*Pantx.* .—*(Mutikoei)* Naspil edeřik izango da or goian...
*Iñaki.* .—Bai, zera, poliki-poliki ibili gera ta!... Dana txukun..., *(Xabier'i zalantzez begiratuz)* txukun samar... utzi degu.
*D'ko. A.*— Nai ba-dezute, gero, mutikoak ordu-erdi baterako emen uztea...
*Pantx.* .- Zertarako, jauna?... Ori gora-bera! Moldatuko gera ManÎoni ta ni...
*Mant.* .—*(Sartuz)* Ara, ara! Banekin nik! Norena dezute alkandora zikin au?

*Iñaki.* .—Ez da nerea.
*Xabier* .—Ez nerea ere.
*Mant.* .—Irea dek, beraz, Yontxu? *(Lotua askatzen diola)* Gaxoa! Nola lotu dek pardel au ain estu?
*Dk'o. A.*—Tira maiteok. Etxekoandre maitagaŕi auei agur esaiezute, ta eskaŕik-asko.
*Iñ. ta Xab.*—*(Atso bien lepora jauzi-egiñez, alaiki ta maitez)* Agur, andre Pantxike... Ikusi arte, andre Manŕoni... *(Yontxu ere, besteon leian, zarataka asten da: irurok batera itz egin bezate)* Asko gogoratuko gera zuetaz! Idatziko dizutegu noizean bein... Donosti'ra etoŕiko, gu ikustera?... Oloen beŕi guri bialiko?... Eskaŕik-asko, andre Pantxike... Miļa esker, andre Manŕoni... Agur, agur, agur... Ikusi arte... Datoŕen urtean, beŕiz... Idatzi, gero!... Agur... Agur!...
*Pantx.* .—Baña, gizontxoak, ixilduko zerate?... Ara, Donosti'ko Alkate jauna itxoiten dagotzute.
*Mant.* .—Trenean txintxo joan, gero!...
*Pantx.* .—Burua leiotik atera gabe!...
*Mant.* .—Esanak txuxen egiñez...
*Pantx.* .—Zerbait aaztu ba-zaizute, bialiko dizutegu.
*Mant.* .—Bai: berealaxe bialiko...
*D'ko. A.* -Agur, bada, andre begiragaŕiak: ikusi arte.
*Pantx.* .—Lagunduko diegu bideraño.
*Eŕiko A.*—Atozte axkar, mutikook!...
*Irurok.* .—*(Kaŕaxika, pardelak bizkaŕean ditutela)* Iaufaaa, bagoaz...! Iauffaaa, bagoaz!, iauffaaa, bagoaz!... Donosti'ra!... Donosti edeŕera!... Kaletan ikuļuak eta beiak ikustera!!
*Iñaki'ren otsa.*—Ara! Ikusten al-dek Yontxu, negaŕez?...
*Mant.* .—*(Irtenaz)* Negaŕez!... Zeri negar, nere Yontxu?
*Pantx.* .—*(Donosti'ko Alkateari, irteterakoan)* Jauna, gaurko eguna bezelakorik, sinistu beza, ogeitamar urte biok bakaŕik bizi gerala, ta...

*(Esaldi oŕen azkena gal bedi. Eŕiko Alkateak irten beza atzena. Abots-zarata naasia: mutikoena nagusi. Uŕutixeago, kantari asi dira. Guzia mailka-mailka ixiltzen.)*

## AMAIKAGAŔEN AGEŔALDIA.

### Pantxike ta Manŕoni.

*(Aizpa biak itzuli datoz. Aretoan, batetik-bestera, noragabeki, bebiltza, zerbait laneri eskua ezaŕi-naika bezela. Pantxike'k azkenik, ez-arian bezela, Alkateak emandako idazkia uŕatu beza.)*

*Mant.* .—*(Zerbait esan bear ta...)* Donosti'ko Alkateak izena nola duan ere?...

*Pantx.* .—Manterola, uste diñat...

*Mant.* .—Zuria den, ala beltza?...

*Pantx.* .—Eŕetore jaunak dionez, zuri-samaŕa...

*(Ixiŕunea )*

*Mant.* .—Oraingoan pakea diñagu, Pantxike...

*Pantx.* .—Bai... Noiz-edo-noiz, oŕatik... Pakea!

*Mant.* .—Au etxearen ixiltasuna! Aaztu ere egin zitzaidanan, leen ala zanik...

*Pantx.* .—Oraintxe atseden pixkabat artu dezakenagu.

*Mant.* .—Egia, Pantxike, egia...

*(Ixiŕunea. Gero, Pantxike ateiuntz bijoa.)*

*Mant.* .—Nora oa?

*Pantx.* .—Atea ixtera, Manŕoni.

*(Manŕoni atzetik dijoakio, ta biak pixkatean gelditu bitez, atarira begira.)*

*Mant.* .—Goialde ori ere txukundu bearko diñagu, bada...

*Pantx.* .—Bai: ikusgaŕia egongo den.

*Mant.* .—Guzia azpikoz gora..., oeak egin gabe...

*Pantx.* .—Jesus, miŕa bider!

*(Ixiŕunea.)*

*Mant.* .—*(Ikaraldi)* Pantxike!

*Pantx.* .—Zer den?

*Mant.* .—Ez al-den ezer entzun?

*Pantx.* .—Ik bai, Manŕoni?

*Mant.* .-*(Bijoa leiora)* Ez... Aizea unan, noski...

*(Ixiŕune luzea. Belaŕiak zuti, daude: ezer ez da entzuten. Manŕoni itzuli dator beŕiro.)*

*Pantx.* .—*(Sorbaldak uzkurtuz.)* Irudipenak.

*Mant.* .—Oraintxe, euŕia ere suma liteken egaka...

*Pantx.* .-*(Alabeaŕez bezela, zerbait antolatzera dijoa, baña bat-batean itzuli bedi.)* Zergatik dion ori?

*Mant.* .—(*Ametsetan bezela*) Ezer esan al-diñat?

*(Ixiľunea beřiro. Bat-batean, atea zabaltzen da. Aizpa biak batera itzuli dira, otsak ikaraturik. Andre Madalen sartzen da.)*

## AMABIGAŘEN AGEŘALDIA.

### Leengoak eta Andre Madalen.

*Pantx.* .—(*Gogait-antxean*) Aaa!... Madalen den...

*A. Mad.*—(*Ařituta*) Oiii...! Zer dezute?

*Mant.* .—Ezer ez. Zer izatea nai dezu?

*A. Mad.*—Ikaratu egin zeratela esango nuke...

*Pantx.* .—Nola ez ba?... Atea ořela zabaldu-ezkero, ildakoa ere zutituko litzake!

*Mant.* .-Garai ontan e-tzera etoři oi, ta...ořetxek egin digu.

*A. Mad.*—Etxebeři'ra ninjoan, bada, ta zuen auřetik igarotzerakoan: "sartu-atera bat egin dezadan": egin diot nere buruari. Agi danez, mutikoak eraman dizkizuete...?

*Pantx.* .—Badakizu dagoneko?

*A. Mad.*—Ikusi egin baititut, onuntza nentořela. E-tzeramaten negar-gura aundirik. Kařaxi bizian, txoro batzuk bezela, kantari zijoazen...

*Mant.* .-Benetan? (*Ixiľunea*) Txikia ere bai?

*A. Mad.*—Bai: txikia ere, besteak bezelaxe.

*Pantx.* .—Txikia ere bai!

*A. Mad.*—(*Inguru-begika*) A-ze nolako utsunea, emendik auřera!...

*Pantx.* .—(*Bere burua indarbeartuz*) Pakea, pakea galanta, Madalen...

*Mant.* .—Orixe bai!

*Pantx.* .—Leen, izerdi bizitan goizetik gauera, mutil kozkor oiek zirala-ta.

*Mant.* .—Ta otorduak bostentzako, biontzako orde!...

*Pantx.* .—Ta etxe guzia azpikoz gora...

*Mant.* .- Lokatza ta zikiña non-nai...

*Pant.* .—Bazeneki..., zer kalte egin diguten!

*Mant.* .—Alkiak pUřukatu...

*Pantx.* .—Katiľuak autsi...

*Mant.* .—Ta, lotarakoan, berebiziko iskanbiľa... Bederatziak bitarterańo ere, iñoiz!

*Pantx.* .—Bederatzi-amařak arterańo...

*Mant.* .—Ta, lanean, ez gero uste asko laguntzen zutenik...
*Pantx.* .—Patata-ateratzea ta babarun-zuritzea, ozta-ozta...
*Mant.* .—Gero, buruka gorian ari zenitun beti...
*Pantx.* .—Buruka gorian beti, bi zaarenak batez-ere...
*Mant.* .—Aien zarataz, alkari ezin entzunez egoten giñan askotan.
*Pantx.* .—Iskanbila bizia, goizetik gauera!
*Mant.* . Gelditu gabe, ordea!
*Pantx.* .—Belariak gortu bearekoa!
*Mant.* .—Iskanbila..., iskanbila..., nolakoa gero?
*Pantx.* .—(*Zoratu balitzaio bezela*) Iskanbila..., iskanbila...,

*(Bat-batean, ixildu bitez. Ixilune astuna )*

*A Madal.*—(*Aien etoria eten eziñik aritu-ondoren*) Tira bada! Guziak du munduan azkena. Oraingoan, pake edera irabazirik zaudete. Ala obe. Poztutzen naiz... Agur gaurkoz, enetxoak: banoa.
*Mant.* .—Etori, gero, urena ere, Madalen?...
*A. Mad.*—Gaur, onezkero, ezin. Senara gero ta makalago daukat. Baña, biar, eguerdi-artean...
*Pantx.* .—Etori, bada, biar eguerdi-aldera...
*Mant.* .—Eta, bestela, gu joango gatzaizu, ikustera.
*Pantx.* .—Bai-ta, bai-ta: gu joango gatzaizu...
*A. Mad.*—Ederki; zai egongo nazute. Ta esango didazute, gaur, apaitarako, maia ez al-dezuten utsegi arkitu...
*Mant.* .—Utsegi? Oi! Zergatik?
*Pantx.* .—Utsegi? Oiek ateraldiak, Madalen!
*A. Mad.*—(*Irteterakoan*) Nik bai-baitakit gauza oien beri. Etxean sei aur izan ditugu. Iru, il egin ziran. Beste irurak, ezkondu. Ta, orain, orain... Baña, utzi zagun... Obe da. Biar arte, beraz. (*Bijoa*).

## AMAIRUGAREN AGERALDIA.

### Pantxike ta Manoni.

*(Aizpak lelotuta gelditu dira ate-aurean. Bat-batean, aizealdi zakar batek mai-gañeko paperak sakabanatuko ditu.)*

*Mant.* .—(*Burua itzuliaz*) Zer zeraman aizeak?
*Pantx.* .—Aizeak zer daraman?
*Mant.* .—A!... Dirua den, noski.

*Pantx.* .—Izan ere: dirua. (*Begira bezakio, eskurik luzatu gabe*) Jaso ezan, Manľoni...

*Mant.* .-Jaso ezan eořek.

*(Leiora joan, ta itxi beza. Pantxike'k dirua jaso, ta utzi beza leen bezela, mai-gañean. Manľoni'k itzuli datořela, itzalgaizka, begiak legortzera egin du.)*

Zenbatu ere egin bearko diñagu, bada, diru ori...

*Pantx.* .—(*Uřutitik bezela*) Zenbatu dezagun, bai...

*(Bata bestearen aldamenka, antzerki-asieran bezela, jaři dira; baña, dirua eskukatzen diardute, zenbatu beařean. Alako batean, Pantxike'k ere begiak legortzen ditu.)*

*Mant.* .—(*Aizpari zořotz begiratuaz*) Zer den, Pantxike?

*Pantx.* .—(*Bere onera itzuliz.*) Zer..., zer..., Zer dion?...

*Mant.* .—Zera..., utsa... Iruditu... egin zaidan...

*(Otsa, eztařian, ito, egiten zaio. Dirua zenbatu-naiean asten da.)*

*Pantx.* .—(*Leen Manľoni'k bezela begiratuz*) Zer darabilkin gogoan, Manľoni?

*Mant.* .—(*Lotsakor*) Nik?... Utsa, utsa... Ezer ez... (*Ixiľunea*) Ta ik, Pantxike?

*Pantx.* .—(*Berdin*) Utsa... Utsa, Manľoni!...

*(Ekin bekie orain, bero-bero, diru-zenbatzeari.)*

(OIALA BEERA, ASTIRO)

---

OAŘA. - Emakumezko utsentzat eřez tajutu liteke. Eřiko ta Donosti'ko Alkateak biur litezke, esate baterako, E-A-B'ko Lendakari; eta ari ořetara ikutu, aldatu-beařak liraken esaldiak.

## Lopez-Mendizabal'en Irar-etxeko idazti batzuek:

**Diccionario manual Erdera-Euskera y Euskera-Erdera** por el *P. Román de Bera* e *Isaac Lopez Mendizabal*; un tomo encuadernado de 1.168 páginas, 11 pesetas.

**Manual de conversación erdera-euskera** nueva edición corregida y aumentada, el más completo aparecido hasta la fecha, con extensos vocabularios, modismos, tablas de verbos, diálogos, estilo de cartas y un compendio de gramática, por *Isaac Lopez Mendizabal;* un tomo encuadernado, 6 pesetas.

**Xabiertxo,** *Lopez-Mendizabal'dař Ixaka.*—Umiei euskeraz irakuřtzen erakusteko idaztia. Txiki'ren edeřgařiak. 2 pta.—Bigařen irařkaldia laister aterako da

**Giza-soña** por el *P. Raimundo de Olabide S. J.* Notabilísima obra que comprende clasificadas siete mil voces euskéricas correspondientes al Cuerpo Humano. Un tomo en rústica, 6 pesetas.

**Jesus'en amore-nekeei dagozten zenbait otoitz-gai,** por el *P. Sebastian de Mendiburu,* tres tomos encuardernados, 21 pesetas.

**Testamentu zar ta berriko kondaira,** por *D. Francisco Ignacio de Lardizabal.* Tercera edición corregida por *D. Patricio A. de Orcaiztegui,* con un prólogo del mismo. Un tomo encuadernado, 8 pesetas.

**Nere Bidean,** magnífico tomo de poesías en euskera por *D. Emeterio Arrese,* 2,50 pesetas.

**Gipuzkoa'ko dantza gogoangarrien kondaira edo historia,** por *D. Juan Ignacio de Iztueta,* un tomo de 216 páginas, 5 pesetas.

**Zenbakiztiya euskeraz.** Nociones de Aritmética en euskera para niños, por *Isaac Lopez Mendizabal.* Precio del ejemplar, 1 peseta,

**Umearen Laguna,** Método de lectura en euskera para niños, un tomo encuadernado, por *I. Lopez Mendizabal,* 1 pta.

**Noticia de las cosas memorables de Guipúzcoa,** por *D. Pablo de Gorosabel.* Seis tomos en rústica, 30 pesetas.

**El Problema Foral,** por *Aiztondo.* Interesante folleto, 0,75.

**D. García Almorabid.** Novela, por *D. Arturo Campión.* Un tomo de 306 páginas, 3,50 pesetas.

**Manual de Higiene y Medicina Popular,** escrito en castellano y euskera, por *D. Martín Ananburu* y *D. Manuel Bago Aguirre,* un tomo de 310 páginas, en rústica, 2 ptas.

**Txomin Arlote,** *Maruri Abak.* Umientzat Ipuya. *Txiki'*ren 17 mařazki' margotan. Peseta 1.

**Euzko-Lutelesti txikia,** por el *P. Zabala Arana,* nociones de geografía del País Vasco, para niños, un tomo, 1 pta.

**Martin Txilibitu,** Umientzat irakurbide eřeza. 0,10.

---

MEZETAKO LIBURUAK EUSKERAZ.

*(Jaŕaipena).*

*Parsifal* aña luzean, ia, ia. Badakizute onek ere Ostiral Gurenaren Atsegiñak edeŕak, bene-benetan ditula, bañan auŕetik garizuma luzea. Pastoralekin ere azkar okituko giñake. Ori da Euskal-Antzeŕti bakaŕa XVI ta XVII'g. gizaldietan. Ordurako erabeŕiko antzerti bat sortu zan Europa eŕialdetan Leenetakoa Itali'ko "Comedia d' Arte" deritzana, elizatik kanpo, zearo jostalari, atsegin ta iŕitsua bere Arlekin ta Politxinelarekin. Españi'n Guillen de Castro, Lope de Rueda; Portugal'en Gil Vicente izan ziran gero etoŕi bear zuten teatro-gizon argidotaŕen auŕelariak: Shakespeare, Corneille, Moliere, Lope de Vega, Hans ta abar.

Bide beŕia zabaldu zuan Antzertiak. Bañan aldi artan "Pizkundea'k irakiten ezaŕi zituan Europa'ko gizon goitaŕenak. Itali'ko jakintsuak begiak Grezi ta Eŕoma'ko antziñako oitura jakintsu ta gizabideetara atxikiak zituzten. Prantzia'n batez ere orduko maisuak grezitaŕen zuzenbideetatik eraman nai zituzten, Teatro ta erti guztiak. Jakiña, imitazio-antz-bidea, ertian bide kaskaŕa izan oi da. Besteen legetara geiegi lotzen danak ez du landare mardulik sortuko, baizik erkitu ta miŕiñak, ortz ta ileak ez bazaizkio ateratzen. Onela izan dira geienetan *"Clasicismo"* estuaren ondorengoak.

Bada Franzia'ko ertilariak, orain Paris'ko jostunak bai liran, era ura toki ta lateŕi guzietara zabaldu zuten. Oŕatiokan "Croce"k dio Españia'k luzaroan uzkur egin ziola aŕoputzen erakutsiai. Vives'etik asi ta Feijoo'raño azke gelditu zirala kutsu ortatik.

Teatroak ere bere azkatasuna gorde zuan. Ala bear ere; "Arauak" ez dute beti ta toki guzietan berdiñak izan bear; oituren ta egokieren arabera aldatzen dijoaz. Elerti beŕi bati *poetica* beŕia dagokio. Ta lengo lege ta arauak ez aitortua, ez du esan nai batere, legerik gabe lan egin bear danik. Ez. Izadia'rengandik arauak artu ta ikasi bear ditugu; ta ez guk, ostera, berari eman naiean ibili. Azkenik, ikusleen poz, atsegin ta kutiziak, zer dagon ondo ta zer gaizki erabakitzen du.

Oartu; izan ziran klasiko, sasi-maixuak, Shakespeare basatia zala esan zutenak.

Urte asko igesi joan ziran gauzak oraindik bere artan zeŕaitelarik; XVIII-gizaldi osoa.

Romanticismoa'ren matxinada, jasa ta ekaitza bear izan ziran eŕiek esna zitezen ta beren buruak Teatroaren ispiluan ikusi zitzaten. Ta au da biderik erosoena lo-zoŕoan, argalduta, menperatuta dauden eŕiek goruntz, elburura igo arazteko. *"Curet"* Teatre Català'

ren zuzendariak onela dio: ertilari ta jakintsuen gogai ta asmoak, Teatroren bidez ezur ta mamitan biurtzen omen dira, bestela amets uts ta txoroak izango lirakenak. Teatroa'ren kondairak Flandes, Cataluña, Eskandinabia'n ta abar ori bera erakusten digu.

Zertan giñan euskaldunak garai artan? Egia esateko, gure bizierak ez zuan asko laguntzen emen Antzerki beŕiaz lur artu zezan. Gure euskera aundiki ta jende nagusien artean ezetsia zegon, oinperatua. Oartu XVII-gizaldi arte, euskera ez zuala iñork landu dakigula beintzat; ezta bertan iduki nai izan.

Gañera, gure Politika-eralguntzaren bidez ez zan Euzkadi osoan uri aundi bat bildu edo sortu. Gipuzkoa'n, esate baterako, Batzar nagusiak eŕi azkotan egiten ziran. Ez zan eŕi buru nagusirik. Donosti'ko uri eder au, orain 60 urte arte ez zala Bergara, Azkoiti, Tolosa baño askoz aundiagoa ba-dakizute. Ta eŕi aundiak, eŕege-uri ta bizi lekuak, jende oporzale, kaskarin ta "*buffoia*" dauden eŕiak Teatroari indaŕa ematen diote. Ez degu onelakorik izan. Napaŕo'ko eŕege-sendia ta ingurukoak azken alditan beintzat aŕotzak izan bai-ziran. Emengo giroa, beraz ez zan Antzerti euskaldun bat ernaitzeko egokia izan. Orain urte batzuek emen bertan irakuŕi nuen lantxo bat "Euskel-Antzertitzaz" ta Euskal-Esnaleak argitaratu zuan.

An nion: "ez gendula Antzerti'rik izan iñolazko elertirik izan ez genuen bezela. Antzertia kaletaŕen jolasa da ta ez basaŕitaŕena. Gure eŕia beti langile izan zan. Geienak nekazari ziran, beste guziak aŕantzatik edo ola-lanetik bizi izaten ziran. Alper gutxi zan gure artean; ez gudaririk, ez itz-jariorik. Gizon langile, beargiña, irudimen laburduna izan oi da."

—

Alaz guztiz, Teatroa bera ez'bada ere, Antzerti-aztaŕenak gure oitura jator Folk-lore ta eresiak aztertuaz arkitzen ditugu; Zanpantzar, Olentzaro, Amona mantangoŕi, Arlequin ta Pierrot añakoak dira Emengo kale-bira, konparsa talde, agerketa ta baita ere eliz-bira-prozezioak Teatroaren ernemin ta aztak dira. Erderaz "pantomima" ta "sensibles animados" bezela. Onelakoak ditugu Irun, Ondaŕabi'n egiten diran agerkaiak. Ta Tolosa'n Beotibar'ko jasaŕaren oroimenez-edo egiten dana. Eloŕio'n Erebonbilo taldea deritzana Lepanto'ko gudaketaren gomutaz. Anzuola'n Valdejunkera'ko eraso-aldiaren oroigaŕitzat egiten dutena. Abdeŕaman beltza azaltzen dute ta berebiziko itzaldi asaŕea zuzentzen dio gudari batek. Itzaldi paŕagaŕia, erderaz noski, erdera motroloan. Azkenean esaten diolarik: Eŕetirate!

Bertsolariak alkaŕi jaurtitzen dizkioten zirikadak ere, edozein antzerki iŕitsuetan sartu ditezke.

Eresitan beŕiz ez dago zer esanik. Gau-iĺa ta iĺetak baŕentzeko indar aundia dute. Alos-toŕea'ko eresia Arakistain jaunak *"Leyendas Cantabras"*en edesten diguna antzerkigiĺe iayo batek artuko ba'lu gai da berez izugaŕizko zorigaitz-antzerki edo trajedia antolatzeko.

Alos-usoa etxeko alabaren ezpañetan ipintzen ditun neurtitzak (aita il zaionean) ziñez otsikara ematen dutenetakoak dira. Entzun zuek:

Ai au mindura beltza
Ai nere lotsa
Alabak negaŕa ta
Aitak lur otza
Zeñek loitu zaitu zu
Alos-torrea?

Ai! nere aita maitea
Aita maitea.
Iltzea ondo egin dezu
Aita jaun maitea.

Racine'ren neurtitz batzuek gogora ekartzen dizkit *Iphigenie en Aulide* deritzan antzerkikoak ta Iphigeni'k, Alos-usoak aitari bezela, Mitridate'ri zuzenduak:

Le tombeau, seigneur,
est moins triste
que le lit d'un epoux
qui m'a fait cet outrage,...

Onelako amaika edertasun arkitu ditezke gure ipui ta eresien aŕobia landu ezkero.

Bañan ez ditzagun gure asmo edo ametsak egi biurtu. Pastoralak ezik ez zala Euzkadi'n beste euskal-antzerkizunik ezagutu, esan degu len ta ortan geldìtu gera. Auŕera goazen, XVIII-g. gizaldia ia amaitzera zijoan. D'Etxepare apaizak *Lingua Vasconia primitivœ* euskeraz lenen egiñiko gutuna argitaratu zuala eun urtetik gora ziran.

Leizaŕaga, Axular, Etxebeŕi ta Mendiburu'k jaŕaitu zioten. Laŕamendi A. aundiak deadar zoŕotza euskeraren alde atera zuan bere "Eziña Egiña'z" ("El Imposible vencido"). Luŕikara batek astindu zuan piska bat ia iĺik zegon eŕia.

Beste zenbait idazle enparantzara irten ziran. Oien artean nagusi aundiki batzuek: Xabier Munibe, Peñaflorida'ko Kondea ta Azkoiti'ko zalduntxoak aitatu ditut. Bergara'ko Ikastetxearen iraspena ta "Sociedad de Amigos del País" eratzea izan zan gure etxe-zaaŕa beŕitzeko lenengo oñaŕia jartzea. Iñoiz alare aide nagusiak beti erbestera begira bizi beaŕean gure lur maite ontara begiak ta biotzak makurtu zituzten. Euskal-Eŕia gora naiean abitu ziran ortarako, ondasun, nekazaritza, elertia, jakituri guziak bildurik.

Ona emen Peñaflorida'k zer dion "Sociedad de Amigos del País"en arautegian:

1.° "Que hagan feliz y envidiable el vascuence, escuela de erudición, manantial de bien público, y compañía perpetua de ilustres sabios que unidos todos en un objeto, lo logren con admiración de las naciones".

Antzertia'ren alde ere leiatzeko asmoa bertan azaltzen digu 2.'en atalean.

2.° "Que era precisa una honesta diversión para el tiempo en que se juntasen tantos caballeros en un lugar. Que no se podía escoger otra más útil y amena que la del teatro". Ta au egiztatzeko Peñaflorida'ko Kondeak antolatu zuan opera iŕitsu bat euskera-erderan "*El borracho burlado*" izendaturik. Bera da euskerari saŕera eman dion lenengo antzerkia. Bergara'n San Martin Agiŕe donetu zuteneko jaiak zirala-ta 1764 urtean antzeztu zuten. Murua sendiaren jauregian.

Peñaflorida'k aitortuta dakigu auŕena Operatxo ori euskera utsez idazteko asmoa artu zuala. Geroztik zergatik esan gabe, bestela egin aŕen, euskera-erderan. Euskeraz ditun neurtitz ta abestiak Urkixo Julio jakintsuak, Meagher A. Jesuita donostiaŕak egiñak ote diran dio. Operatxo ori ez da gauz aundirik noski ez mamiz ta ez azalez, bañan, tira, asierako ez dago gaizki.

Zuen jakin gura piska bat ase naiaz mozkoŕak lenengo saŕeran abestutzen ditun bertsoak irakurtzea nijoakizute:

Ai niri zer egin ote zait
Oñez ibiltzen aztu zait
Burua jaso ezin det
Luŕa idoro ezin det
Triste det bizia beŕiz
Esan dezadan beŕiz.

—

Ardo kanta ta ondorengoak orain ere geigi ikusten ditugunak.

*(Jaŕaituko da)*

# ETXE ONTAN SALGAI DAUDE:

ABAROA TA BABESA.—Iru ataletan. Añola'tar Xalbador apaizak gaztelaniz egindako Antzerkia, eta Beobide'tar Jone Marik euzkeratua . . . . . . . . . . . .

AITONA TA BILOBA.—Garitaonandia'tar Bitor'en bi atal ditun Antzerkia. . . . .

ARTZAI PILIPE.—Ilarramendi'tar R.'rena . .

ATOR ETA JAÑAI AKIT.—Añizabalaga'tar L. M.'ren bi atal eta lau zati ditun Antzerkia .

AZI ONA—Antzerkia . . . . . . . . .

BATEKO UÑIA.—Ilañamendi'tar R.'ren egintza bakardun jostirudia . . . . . . . .

BIGAR ARTE? JA, JAI!!—Olaizola'tar Joseba'ren Antzerkia . . . . . . . . . . .

EGIN ZAK ON.—Amundarain'dar Antonio'k, neskatxak bakañik egiteko eresidun Antzerkia . . . . . . . . . . . .

IRAÑA.—Antzerkia. . . . . . . . . .

IZIARTXO.—Garitaonandia'tar Bitor'ek egindako bi ekitaldi ditun Antzerkia . . . .

BOST URTIAN.—Altzaga'tar Toribi'ren Antzerkia, bi ekitaldietan . . . . . . .

ALDIZ-ALDIZ.—Bañiola'tar Abelino'ren Antzerkia, egintza batian. . . . . . . . .

MEZA BEÑIYA.—Bañiola'tar Abelino'ren jostirudia, egintza bakañian . . . . . . .

LORETI.—Iru egintzetan, Eleizegi'tar Katariñe'k tajutua. . . . . . . . . . .

LORE BAT LOITAN.—Iru ekin alditan, neskatxak bakařik egiteko Antzerkia. . . .

OLESKARI BIJAK . . . . . . . . . .

ONGIĽEAREN SARIYA. — Bi atal ditun Antzerkia, Garitaonandia'tar Bitor'ena . . .

SORGIÑAK.—Emakumezko utzentzat bi zatikiko Antzerkia . . . . . . . . . . .

ATERAKO GERA. – Altzaga'tar Toribi'k egintza bakařean idatzitako jostirudia . . .

EUSKAL-EGUNA. — Labayen'dar Andoni'ren iru ekitalditako Antzerkia . . . . . .

OSTEGUN GIZEN. - Umientzako Antzerkia .

LAÑO TA IZAR.—Ipui antzezgařia. Lizardi'tar Xabier. . . . . . . . . . . . .

MAYA.—Ayanbe'tar L. . . . . . . . . .

GUZIK GAXO.—Erderatik antolatutako bakařizketa. . . . . . . . . . . . . .

MATEO TXISTU.—Ayanbe'tar L.'ren egintza bakařa . . . . . . . . . . . .

BI AIZPAK.—Lizardi'tar Xabier'ek euzkeratutako bi ekitalditako Antzerkia . . . . .

---

ARPIDEDUNAI OAŔA.—Arpide-saria gereganatzeko, "BANCO DE TOLOSA"'tik ordain-bidea eskatuko zaizute.

bañan egia onela da. Igazitako Ofiľa'n Jaungoikoak Bereganatu zuan aren gogoa.

Parada euskel-idazlea ez izan aŕen bere antzerkietan euzkogai ta gogai aberkoiak erabili izan ditu. Onela: "*Maite*" "*Dos Amores*" "*Astidunak*" ta abar. Azkeneko au Altuna'k euskeratua. Parada jauna lan asko egiña zan Bilbo'ko *Euzko-Gaztedija*'n euskel-antzertiaren alde. Galera aundia izan du gure elertiak. Iñoiz aztertuak izango dira Parada ta Biar idazleen erti lanak ta zer gaŕantzia gure pizkunderako izan duten garbi ikusiko da. Gaur itz labur bañan egitsuetan Parada'tar Isidor' en eriotzagatik gure naigabea bere sendi ta adiskideai agertu nai diegu, irakurle guziai otoitz bat aren gogoaren alde eskatzen diegularik.

X.

---

## Antzerki-jaien gora-berak.

Antzeskizun ugaŕiak ospatu dituzte bi iľabete oietan. Gogoan artu ditugunak auxek dira:

Ofiľaren 7'gn. Zarautz'en "*Jauntxuak*" ta "*Negaŕez igaro zan atsua*".

Ufetxuan bertako "Edeŕena" pelota-enparantzan Donosti'ko Eusko-Etxeakoak Oriľa'k 22 zituala "*Bost urtian*" ta "*Ezer ez ta festa*" antzestu zituzten.

Ofiľa'k 26, Korpus-Kristi egunean Araba'ko Aramaiona'n Otxandiano'ko taldeak agertu zitun "*Iziartxo*" ta "*Uzte diñat*".

Azkoiti'n Garagaŕiľaren 3'gn. "*Olinpia*" antzokian "*Abaroa ta babesa*".

Garagaŕiľaren 4'gn. Markina'n "*Iziartxo*" Alkiza, Lezo ta beste eŕi askotan ere antzerki-jaiak izan dira. Ta au euskel-antzertia gero ta geiago zabaltzen ari dan ezaugaŕia da.

Erdel-antzerkiak bañan eusko usai ta eusko gaidunak antzeztu dituzte: Algorta'n "*Iker el pastor*" "*La vieja que pasó llorando*" ta abar. Ta Santurze ta Portugalete'n "*Azi-ona*" deritzan eresi-antzerki edo zarzuela.

Txalo-jasa guzientzat.

ZALE.

---

## Bazkun beŕi bat Euskel-Antzerti-alde.

Aŕas pozturik irakuŕi degu Bilbo'ko Euzko-Gaztedija'ren baŕuan talde bat sortu dala Euskel-Antzertia suspertzeko. Asmo edeŕekin datoz. Ta ez asmo utsak bakaŕik.

Euzko-Gaztedija'ren indar ta eralguntza ezagunak zaizkigu; ta sendo ta ederki lan egiten

dakitela ere bai. *Antzerti*'ren laguntzik gabe ez dira geldituko. Ta xede ortan aurera jaraitu dezaten, gure orialdeak, gogo onez, eskeintzen dizkiegu.

*Artezkari.*

## Teatroa Udaran.

Il ontan teatro-aroa bukatzen dala esan diteke. Gure bilera ta batzokietako antzezlari taldeak udaran atseden artzen dute. Orain gazteak egurastera joateko garaia da: mendira, itsasalde ta basoetara. *"Lizardi"* olerkari gurenak otsegin dun eran:

"Itzal!
Baso'ren ume yaukal"...

Euzki ta eguraldi onaz soña saildu beara degu, gero, negu luzean, lirain, arin, osasuntsu etsi dezan.

Alaz guztiaz, eriko txikitako jaietan antzerki-jardunak eratu bear lituzteke; naiz toki itxitan, naiz agirian, enparantzan. Antzerki erezak, "txontxongiloak" bear bada, gaztediaren atsegin eman, ta bidenabar ongi erakusteko. Ez dedila eri txikiko jaia *"tripa festa"* utsa izan. Beraz, tarteka-marteka, gure antzezlari-taldeak nora joana ba-dute.

Bestela oporaldi au oso beañezkoa da teatro-taldeen zuzendariak datoren arorako antzerki beriak gertu ditzaten. Zalapartarik gabe, aukera egin dezaten, banaketa, antzezlari beririk begiz jotzea ta abar.

Itxaropen osoan gaude, datoren aroa, 1932/1933 bitartekoa, euskel-antzertiarentzat bizkor ta oparotsua izango dala.

Antzerki beriak ba-datoz ta oraingoan bultzakada edera eman bearean gera.

Antzoki zabal ta egokiak edo beintzat ainbesteko aretoak eri askotan antolatu dituzte.

Aurera, bada, euskel-antzerti zaleak alkaren leian. Emen dago *"Antzerti"* zirikatu ta laguntzeko.

*Aspoa.*